# Aurkibidea:

## Gosea dokumentu

1996. urtearen hasieran, euskal preso politikoen Kolektiboak, "Euskal Presoak Euskal Herrira" leloa ardatz zuen borroka fase berriari ekin zion. Harrezkero makina bat itxialdi, gose greba eta abar egin dira frantziar zein espainiar estatuetako kartzeletan, denboran luzatuz doan ibilbidea marraztuz.

Oraindik gaur bere horretan diraute borrokaren ardatz, premia eta helburuek; sakabanaketa eta deserriratze hiltzailearen kontrako borrokak Herri osoaren ahalegina eskatzen du eta, beraz, gugana zuzentzen den gezi bilakatzen da.

Urte hauetako guztietako pasartetxo bat duzue honako "Gosea lagun, laguna" hau, non euskal militante preso talde baten txandakako gose greba bateko bizipenak islatzen diren. Behin gosearen irrikari iskin eginda, literatura egin nahi izateari ekin zioten militanteek eta dokumentu hau da helarazi diguten emaitza.

**atara**miñe.

## Goseak jota, Lagun

Bi euskal preso politikok urte luzeetan buruturiko hamaika gose greba horietako batean, –seguruen, ez besteak baino luzeagoa ezta laburragoa ere– propio idatzitako egunkarietatik ateratako hausnarketak eta burutazio zenbaitek osatu dute lantxo hau. Gose greba eta kartzela, beraz. Nola uztartu bi kontzeptu zakar horiek? Nola egin daiteke gose grebarik bizi baldintzak jada hain eskasak diren gune batean? Egoera jadanik urria eta halamoduzkoa larriagotu baino egingo ez duen borroka izango al da? Galdera hauei egoera "normaletik"erantzuteko zailtasuna oso ongi islatzen du kartzelari batek presoetako batekin izandako (eta testuan agertzen den) elkarrizketa zinez kafkianoan: "*La verdad no os entiendo. Es una postura dura, pero al final para nada*". Kartzelariaren deklarazio honek ulertezin-

tasuna eta inpotentzia biltzen ditu. Dudarik gabe, gose grebak nahasmendua sortzen du kartzela osoan. Horren adibide ona da greban dagoen preso goseti baina zorrotzak kartzelako bozgorailutik igorri duten mezuari somatu dion sintoma ukaezina: familiarekiko lotura Alacant-en ez duten presoei eskaria berehala egiteko eskatzen zaie, haien herrietara eramanak izan daitezen. Ezinbestekoa da, noski, bigarren graduan egotea. Gauza jakina da euskal preso gehienak ez daudela bigarren graduan. Beraz, grebalariei bidalitako zeharmezua, sibilinoa, maltzurraren aurrean gaude, honakoa esan nahi baitu: *"Sistemak funtzionatzen du, sistema ona da. Zuek ere, errebelde aluok, zintzoak izan eta begira nola lortzen diren gauzak, gose grebarik egin gabe."*



Hasierako galderen harira itzulita, kontua da egiazko gatazka zein den argitzea. Borroka, nire ustez, boterearen eta kartzelarien aurka independentzia lortzean datza. Presoarentzat arazoa hauxe da: nola lortu autonomia propioa, duintasuna eta independentzia, hain justu amore emateko, gizatasuna desagerarazteko, eta sumiso bilakatzeko pentsatuta eta eginda dagoen ingurune batean? Inguru horretan borroka bat aurrera eramatea pentsatuta duten pertsonek ongi baino hobeto pentsatu behar dute zein bideri ekin. Desobedientzia zuzenak presoaren beraren suntsipena ekar dezake: jipoitze etengabeak edo isolamendu ziegatan denboraldi luzeak ematea. Ondorioz, presoak bere duintasun minimoa defenditzeko, historikoki, bere

buruaren kontrako biolentzia erabili izan du: autolesioak (ospitalera eramana izateko), eta gose grebak. Horien bitartez presoak bere buruarekiko nolabaiteko boterea erabiltzen du, bere existentzia-baldintzen gainean erabaki egiten du, eta horrela, zeharka, instituzio errepresiboa eta kartzelariak deskontrolatu egiten ditu. Errutinak eta arauak apurtzen ditu. Kartzela-sistema ustez ahalguztidunak bere ahalmenaren parte bat galtzen du. Presoaren gaineko agintea ez da jada horren absolutua.

Presoak, era horretara, bere askatasuna berreskuratzen duelako inpresioa du, berriro bere ekintzen jabe delako sentsazioa du, eta hori oso ingurune murriztailean gertatuz, ia miraria da. Sufrimendu fisikoa izaki, paradoxikoki, ongi sentiarazten du. *Gizakia ez da soilik ogiz elikatzen* esaera zaharra, hemen *ogirik gabe elikatzen da* bilakatu da, epe baterako sikieran. Presoak bere gorputzari tortsio modukoa egingo dio espiritua libratzekotan. Eta hori eginez, nolabaiteko agintea lortzen du kartzelako esparru itogarrian. Presoak bere bizitza eta patua menperatzen dituela sentitzen du, eta kartzelariak, aiko-maiko, ez daki zer egin, ezin ditu erabili une horretara iritsi arte erabiltzen zituen araudi eta erreglamendua. Noraezean, hauxe diotso presoari: *"Pero coma algo, hombre"*.

Gose greba baten iraupena nahi adina luza daiteke, bakoitzean jokoan dagoena kontuan izanda. Jokatzen

dena presoaren izaera politikoa baldin bada, heriotzaraino eraman daiteke, Bobby Sands-ek edo GRAPOkoek egin zuten bezalaxe. Beste adibide batean, berriz, presoa estraditatua eta, beraz, torturatua izango denean, gose grebaren izaera urgentziazkoa da. Protesta egiteko balio du eta aldi berean grebak eragindako ahulezia fisikoa bilatzen da, horrek torturatzailearen aukerak mugatuko dituelako konfiantzaz.

Funtsean beti da arauak indarrez inposatzen saiatzen den autoritate baten kontrako erresistentzia bat, intsumisio bat. Eta subjektiboki ikusita, presoaren eskariek presoak bere burua subjektu politikotzat baitu, horren errekonozimendua eta errespetua bilatzen dituzte. Hortaz, liburuan medikuak presoari greba hau "*erregimentala ala judiziala*" den galdetzen dionean formularioan dagokion laukitxoa betetzeko, nahi duena jar dezakeela diotso presoak, ez du axolarik. Preso politikoarentzat greba guztiak politikoak dira. Hipotesiei jarraikiz, gerta zitekeen bestalde, presoa "urrezko kaiolan" egotea eta hala ere, gose grebari ekitea beste batzuekiko elkartasunagatik edo arazo politiko orokorrengatik, Nelson Mandelari gertatu zitzaion bezalaxe. Edozein kasutan gose grebak armagabe uzten du instituzio kartzelarioa. Horregatik, liburuan esaten den legez, egia da "*gose grebak kostu handiko ahaleginak*" direla, baina are egiagoa da "*borroka egiteak beti dakartza ondorio onuragarriak, gose greba 'galduetan' ere bai*".

**antton azkargorta**

# Badator



Ba dator, sumatzen da giroan eta lagunen elkarrizketetan. Badator gosearen lekukoa, Euskal Preso Politikoen Kolektiboaren oihua, indarra eta kemena, azken hilabete luze hauetan ehunka boluntarioek aurrera eraman dutena, Euskal Herrian makina bat herritarrek jarraitu egin duten ekinbidea eta, azken batez, PRESOAK EUSKAL HERRIRA zeregin zehatzaren inguruan, herri bat hunkitu, eragin eta zutitzeko bidean ipini duen ekimenak.

Gutxi falta da gure txandarako, egun bat besterik ez. "Eutsi lagunok, hemen gaude eta zuen lekukoa hartzeko. Ohore zuei zuen sufrikario latzarengatik, guregan barne-indar bilakatu dena zuek erakutsitako duintasun eta harrotasun berberaz geu ere aritzeko ondoko egunotan".

Gose grebarako nor bere burua prestatzen genbiltzala eguneroko bat idaztea erabaki dugu. Batek ideia bota zuen eta beste batek segituan apuntatu ere. Horrela erabaki genuen bisitarien mintzalekuetatik bakoitza bere modulura gentozenean igande eguerdi batez. A ze trikitilari parea! Lan polita gerta zitekeen gose greba eramangarriagoa egiteko eta, idazlanaren formari dagokionez, arazo handirik gabe uztartu genitzakeen bion idazketak, kartzelaren modulu ezberdinetan bageunden ere. Erabili beharreko euskarari buruz zera esan, euskalkiei zegokienez, ahalik eta askatasun gehienez aritzea deliberatu dugu, aberasgarri eta kartzelan ematen den hizkuntza-errealitatearen benetako islara delakoan.

Beraz, bi ahotsez edo bi doinu ezberdineko balada duzue honako lerroak, azkenerako lan kolektibo, edo kolektibo lana, batek daki, bilakatu dena. Amestutako herri baten magalean izendatu gabe doazen lagun askoren gomutaz eta Euskal Herri bizi eta solidarioaren laguntzaz izkiriatutako lerroak dituzue honako hauek.

Idazleok boluntarioak gara, baina ez bakarrak. Azken hilabete hauetan luzatu den grebaren azken txanda honetan frantses zein espainiar zenbait espetxetan 120 bat lagunek hartuko dugu parte. Denon artean Euskal Herriko kale eta plaza, baserri eta kai, mendi eta lautadak pizteko asmoz edo, hori bakarrik bada ere, ongarriz betetzeko, zeren eta geure saioak, zalantzarik gabe, bere bidea egingo baitu.

*1997.eko Apirila, Alacant-eko espetxean.*
*"Segapoto" Kolektiboak*

# Larrun, oinez eta bare

*Gose grebaren lehendabiziko eguna. Apirilak 5*

"Apirilak bost dizkik eta ezin diat esan bost ajola zaitenikan. Gose grebaren hasieran gaudek, etxekiat zenbatgarrena dan honuzkero.

*Doinua: "Diostesalbe."*

Gose grebaren testigua hartuz
goaz aurrera begira
fatxen aurrean oihuka euskal
presoak Euskal Herrira.

Eta ezertan segitu baino lehenago, hemen dijuaztik Iruñeako gose grebalariei[1] paratutako bertso batzuk. Beren eskaintza txapela eraztekoa izandu huken eta ddi-dda batean sortu zitzaizkidan, kasikan esan dezaket bere gixa erten zitzaizkidala.

*Doinua: "Juana Bixenta Olabe"*

1 Otsailaren hamasei hortan
gose greba latz bat da hastekotan.
Zotzi lagun dira guztira hor
azkeneraino eusteko gogor
zeren neurrira?
Herri honen muga zahar-berrira:
euskal presoak Euskal Herrira.

2 Iruñan dute non egotea
euskal Hiriburu zahar maitea.
Beren eskaintza zabalduz doa
mendiriz-mendi bere hegoa
noraiño ote?
Gartzel guztitara heldu arte
presoek behintzat hala diote.

3 Hauen oihua gartzelatara
baita ere sei Euskal Herritara.
Ez dute bozgoragaillurikan
ez Iruñan ez eta Gernikan
Ixolaturik!

Etsaiak nahi ditu ixildurik
horrela dauzka: setiaturik.

4 Baina kemena eta arrazoiak
zortziongan jotzen dituzte goiak.
Bizirik da euskal txalaparta
zabalduz bere soiñu aparta
ta egunero
bai orduro ta bai miñutoro
jendea esnatzen dute bero.

5 Egunez-egun, hogeita hamasei
ordua heldu zaie lehenengo biei.
Dena ta gehio dute emanda
ziña beti sakratua izanda
ta ukabila
gora luzatuz izarren billa
jendea zutik jarri dedilla.

6 Nola jarraitu bihar edo etzi?
Beste bik hogei eta hemeretzi.
Azal ta hezur, ze ahulezia!
Begirada, ai, bizi-bizia!
"Ezin dut gehio"
Irudia joan da leihoz-leiho,
nork esan du ez dula balio?

7 Heldu zaie berrogeigarrena
beste bi, jaunak, hospital barrena.

Gartzeletan urduri gaudela
Etengabekoa da gaubela.
Zuekin gaude!!
Makina bat jende ahaztu gabe,
baztertua baina jaun ta jabe!

8 Azkenengo bik berrogeita bi
eman digute bereak eta bi.
Orain testigua da gurekin
bat egiñik zuen indarrekin.
Harrotasuna!
Erakutsiz gure nahitasuna
lortuko degu askatasuna.

Pilak bere lekuan. Gaubeko hamarrak dittuk eta esan dezaket hauxen izan dala gose grebatan pasa deten egunikan txarrena. Burukomiña egun osoan eta bukatzeko botaka aritu nauk, sekula santan gertatu etzaitena. Ur pixkat edan orduko komonera segiran. Ikusiko diagu bihar.

Kide bat estraditatu behar omen ditek, Mexikotik oraingoan. Diruaren indarrak duintasunaren azken aztarnak ere ezabatzen dizkik

Hasi gara ba. Gaurkoan moduluan nirekin dagoen "bizkaitar pataterdi" laguna eta biok, ohi ez bezala, elkarrengandik nahiko galduak ibili gara patio sasoian,

bakoitzak bere bakardadea bilatu guraz, bakoitzak bere kezkaz. Musta argeliar presoaren aurka partxisean jokatzen aritu da bera eta ni, ziegatik jaitsi eta segituan kartzelariek banatu dizkiguten egunkari atzeratu batzuk irakurtzen. Presoontzat gehienetan zaharrak berri.

Ez da bitamina txarra izan EGINek Iruñako apezgaitegian gose greban izan diren kideekin argitaratu duen elkarrizketa irakurtzea, ez horixe. Gose grebaren lehen eguneko flakeziak gainditu ditut erabat, halakoxea izan baita zortzi neska eta mutil horiek eraman duten borroka, berrogei egunetik gorako gose greba mantendu izanaz. "Txapo". Etsenplu horren aurrean nolatan ez nituen gaindituko ba?

Patioko denbora agortu denerako Pataterdik ere irakurrita zeukan aipaturiko elkarrizketa. Nire moduan, bera ere hunkituta dago. Animu horrekin txaboloratzen gara. Bihar arte, laguna.

## *Apirilak 6, ...2. eguna*

Esnatu bezain pronto irratia piztu eta Eginek dakarren lehen orrialdeko berriarekin gosaltzen dut: ehun eta piku lagun presoen insurrekzio gosetia.

Egunero pasatzen dugu kontsulta espetxearen erizaindegian: pisua, tentsioa eta pultsua hartu eta, azkenik, lauzpabost galderetako itaunketa txiki bat egiten digute. Gaurko fitxa medikoari dagokionez gauza bitxi bat gertatu da sendagileak gure greba "erregimentala" ala "judiziala" ote zen galdetu didanean:

-" Euskal presoak euskal herriratzea; zigorraren hiru laurdenak beteak dituzten presoentzako baldintzapeko askatasuna eta, azkenik, preso gaixo sendaezinak kaleratzea".

Horiek zirela gure eskakizunak adierazi diot, eta hortik kontuak ateratzeko, baina "erregimentala ala judiziala" zenentz, ez nekiela. Azkenik, zerbait ipini behar zuela eta, "judiziala" zela gure greba iritzi dio eta hala idatzi du bere galdera-sortan.

Bisita eguna izan da gaurkoa. Bisiten mintzalekuetan modulu guztietako lagunak elkartzen gara, batzuk greban eta beste batzuk, zenbait arazo eta arrazoi medio berriz, ez. Baina den denak "gurdia" bultzatzen, nork bere ekarpenak egiten, grebalariei edozertan laguntzeko prest. Horretan genbiltzala sekulako aztoramendua gertatu da Iruñako neska grebalari bat kristalez bestalde agertu denean, han geunden preso guztiak bere mintzalekura sartu garelarik zistu bizian, gure irribarre eta kokolo aurpegiz, nola hala neska omendu nahian.

Ama etorri zait niri eta kezkatuta sumatu dut. "Lasai, ama, lagunen artean nago eta ondo jagona".

Gaueko iluntasunean bart Euskal Herrian burutu ziren sabotaje ugariren berri ematen du irratiak.

"Horiek ere gurekin egin dute bat" pentsatuz, begiak ixten ditut.

Igandea. Atzokoaren konparazioan txoritxo bat bezela naukak, primeran. Gaur tokatu zaigun sendagilleak etziguk bate begiratu nahi izan, "total, bigarren eguna dezute eta, pse, bihartikan aurrera egingo dittugu egin beharreko guztiak". Etzeukaten gosetu baten itxurikan, ez horixe! Ni pixatu egin nauk, baezpare: kilo ta berrehun gramo gutxio.

PNV-ko batek esan dik Oskar Kadenas estraditatzea oso ondo iruditzen zaiola, ados dagoela baina, ene-ene, akats haundi bat daukala horrek. Zein ote? Baa hori juxtu, Espaiñiko errege-erreginak bertan daudelarik erabaki dutela eta, noski, sekulako kantea emanda. Akatsa emandako itxuran datza, ez estraditatzean. Abertzale petoa, tipoa!

Sendagile hori ta
PNV-koak
PNV-koak
Gogo ta sendimendu
berdintsutakoak,
erraiak gorrotoaz
txit jositakoak
hitz eta diskurtsoak
alperrikakoak
izana bi txanpone-
tan saldutakoak. (bz.)

Joer, Xanti, aizkenian minbizia, eta nahiko zabalduta esaten dutenez. Castellonetikan heldu hitzanean "txistuak harri koxkorren bat edo egin ote didan", esan higuken, sekulako kozkorra lepondoan haukakelarik. Hura etzan bate normala, baita zera ere! Baina gauzak hola zeudeken hi hospitalera joan bittartean beñepein. Joan hitzan...eta akabo, hi berriz besarkatu gabe etxera bialdu hiñuten zuzenean.

Horrenbeste jainko ta birjiñak, santu eta santak! Zera! Zaindu hadi, lagun, alukeri horri aurre egiten. Herorrek esan huken bezela: "aurrera jarraitu behar dugu".

*Doiñua: "Goizian argi hastian".*

"Jo behar dugu aurrera"
erituan sarrera,

bide latzenean sarturik
hauxen da, hau, jarrera!
Gure indarrak horra ziaztik
betiko alorrera,
nahiz malko mardul bat jetxi
gure irribarrera.

Ez gaudek lotsak horratik, eta eztiagu malkorik txukatuko.

## *Apirilak 7,... 3. eguna*

Basauriko Santi Diaz Uriarte, "Goxoki", lagun leial eta zintzoaren berri izan dugu, bera ere gose greba luze honetako boluntario izandakoa aurreko txandetan, eta preso gaixo sendaezinei ezartzen dieten askatasuna eman baino egun batzu lehenago modulu honetan gurekin izan zen aste batez edo, eta oso egun on eta minak eman genituen berak, "Pataterdi"k eta hirurok. Egunkarian Sondikako aireportuan senitarteko eta adiskideek eman zioten lehen harreraren argazkia agertzen zen. Beti alboratzen genuen minbizi

baten posibilitatea baieztatu zenean jota gelditu ginen, istant batez oreka galdua, hitzik gabe. Eta orain hantxe zegoen Santi, jende guztiaren aurrean, lore sorta eskuan eta "hay que seguir adelante" esaten trantze hartatik ateratzeko. Aste batzuk lehenago Viktor K. Frankl-en irakurgai bat leitu nuen, "Gizakia zentzuaren bila", non horixe zela, "zentzua" hain zuzen, gizakiaren bizitzeko arrazoi nagusiena baieztatzen baitzen. Beste gauza askoren gainetik, sexu edo botere egarritik, esate baterako, zentzua. Hasieran ez nuen ulertzen, baina Santiren "hay que seguir adelante" harekin lagunak bizitzaren zentzuaz bete betean asmatu zuela iruditu zitzaidan.

Oro har egun lasaia izan dugu. Bokiek[2] ea jan behar dugun galdetzeko ziegako atea irekitzen digute jatorduetan. Momentuz nahiko indartsu gaude. Ez daukagu beste moduluetako lagunen berri, ez eta kartzelako bazterrik hotzenean isolaturik gose greban ari den neska burkidearen notiziarik ere.

Gaurtxen jakin diagu gose grebari gaiñontzekoak baiño egun bat lehenago eman diogula hasiera. Oooño! Igazkoan ere berdin-berdin. Abillidadea, gero! Ispillu

aurrean jarri nauk ea nolako aurpegia geratu zaiten ikusteko eta a ze nolako muturrezurra: Komo las vacas al tren! En fin, egun bat gehiago egingo diagu. Eta kitto.

## *Apirilak 8,... 4. eguna*

Gaur alabaren eskutitza jaso diat. Pilak bette-bette eginda zeuzkiat, ñias! Horrek jarri zidak tentsioa pittin bat hobeto, pultsazioak ehunera eraman eta kilo pare bat irabazi. Nundikan arraio atera dik nexka honek jenio hori?

*Doiñua: "Xarmangarria zira"*

Ezta erreza gose
greba egitea
gartzela beltz hauetan
hola egotea.
Halare zuekin det
krixtoren suertea
milla esker bihotzez
alaba maitea.

Egun batetik bestera Pataterdiri aurpegia erabat gorritu zaio. Humorea ez du galdu, ordea. Eguraldiak euri itxura du, egun aproposa txaboloan egoteko nork bere pentsamenduekin. "Filosofoak"iritzi horretakoa dela ematen du, estalita baitu bere ziegako leihoa, baina barneko argia zirrikitu batetik kanporatzen da. Horrek ere zerbaitetan jardungo du, agian bere maiteñoari eskutitz sentikor eta gozo bat idazten edo, batek daki, errealitatearen inguruan saiakera sakon baterako apunte batzuk hartzen. Nor da, bada, "Filosofoa"? Han urrutian dagoen ziegako laguna, beste modulukoa, "Hontza" ezizenez ezagunagoa egingo zaizuena.

Mahai gainean utzi ditut goizean eman dizkiguten adiskideen bisitetarako agindu berriak. Orain artean nahiko zen nortasun agiriaren zenbakiaz, baina aurrerantzean bisitarien jaiotze data eta adiskide bakoitzeko gurasoen izenak zehaztu behar dira ere.

Kartzelariak nonbait nahasi dira eta, segurtasun zuzendari-ordearen zentsuraren hatzaparretatik pasa gabe, euskara hutsez idatzita zetorren telegrama hau entregatu didate:

"*Atzo zutaz/zuetaz gogoratzean kukuaren kanta entzun neban. Laster denok etxean. Eutsi gogor. Ana Tere*".

Santurtziko izengabeko emakume batek oparitutako euskal musikaren zinta bat entzunez lokartzera noa:

"*Dolü gabe hiltzen niz*
*bizia Xiberuarendako*
*emaiten baitüt.*
*Agian, agian egün batez*
*jeikiko dira egiazko xiberutarrak,*
*egiazko eskualdunak,*
*tirano arrotzen hiltzeko*".

## *Apirilak 9,... 5. eguna*

Estreinakoz greba hasi zenetik lagunak begiztatu ditugu eritegira ekarri dituztenean geure moduluaren jantokiko leihotik zelatan geundela, beraiek noiz pasatu zain. Hola bilatzen dira aukerak espetxean.

Komunikazio zehatz bat burutu ahal izateko aukera gutxi, baina nahikoa izan da beraien aurpegiak ikustea. Argalegiak iruditu zaizkit. Gosekil laukotea ematen badute ere animoso zeuden.

Preso arrunt gehienak ez dira gure gose grebaz ohartzen, bakar batzuk kenduta, gurekin harreman estuagoa dutenak, hain zuzen. Gure aurpegi zurbilek ez dute apenas atentziorik erakartzen. Bi martziano moduan sentitzen gara, gure ekintzaren zentzua patioko marko estua gainditzen duela argi dugun arren.

"Egunkari eguna". Egun luzeak izaten ditugu batere egunkaririk gabe edo, bestela, kriston pila batera jasotzen dugu. Bazter honetaraino heldu dira Euskal Prentsaren oihartzunak. Alberto Barandiaranek Iruñako grebalariei buruz idatzitakoak, "Gosea, begiradak" izeneko zutabetxoak hain zuzen, zeharo hunkitu nau, puntutxo batean idazlearekin bat ez etorri arren:

"*Akaso beti pentsatu dudalako gose greba batek galtzaileak seinalatzeko besterik ez duela balio, utzi egin behar izaten denean porrot txikia delako beti. Kontrarioa beti pozten da aurrean dituenak sufritzen ikusita, ahultzen ikusita, etekin garbirik gabeko borrokatan ikusita*".

Gose grebak era askotakoak izan daitezke. Gurea, esate baterako, txandakakoa da, epeak finkatuta dituena, nahiz eta etsaiari greba mugagabea dela aditzera eman. Borroka hau bide luzeago baten urratsa, besterik ez da. Presook gose grebak gorrotatzen ditugula idatzi ohi zuen Arrasateko lagun preso batek, kostu handiko ahaleginak dira eta. Eta hala da. Baina borroka egiteak beti dakartza ondorio onuragarriak,

gose greba "galduetan" ere. Nolako haziak, halako loreak, eta euskal seme-alabak espetxeetan gosez lehertuta ikusteak halako kontzientzia bat zabaldu zuen euskal herritarren bihotzetan. Hor dira Arantzazu eta Artzain Oneko ekimenak[3], esaten denaren proba garbia.

Gure saio honek badauzka bere egunak mugatuta. Bai. Badakigu ez dugula lortuko hogei eta piku egunetako gose greba batez eskuratu nahi ditugun helburuak eta, hala ere, saiatzen gara, helburua kontzientzia zabaldu eta indartzean bait datza, egunetik egunera galtzen ditugun kilo hauek Euskal Herrirantz hegazka joango diren borroka-hazi bilakatuko diren esperoan.

Hau dek eta ura edatea, mutilak!

"Altza"-k atzo gorriak eta bi ikusi zituela esan ziguk. Bera gorputzaz txikiena izaki, pixu gehien galdu duna dek, oraingoz behintzat. Etzeok oso lasai. "Para ver ontze emos nazido!", gaineratu dik. Eta aurrera.

## *Apirilak 10,...6. eguna*

Etzeok gaizki. Hemen eztek hodei edo laino koxkor bat hilabete luzetan ikusten, baina nahikoa dek gose greba hastea lainotzeko, ebitan hasteko, haize bolada zakarrak ere... Gaur seigarren eguna eta hemen, enekauendioska.

Etzekiat ebia ikusteagatik edo zergatik arraio, ura edateak gorakoa ematen ditela. Buaj, hau nazka eta tristura! Ba al dakik? Edantzala mariasssantiximak!

– Fran kalera atera da. Fran kalera atera da!– horixe izan da goizetik gure modulura heldu zaigun berria, gure burkide gaixoaren askatzea. Lagunek ere jakinean zeuden guk abisatu orduko jantokiko leihotik lehen orduan eritegirantz abiatu direla begiztatu ditugunean. Makuto irratia.

*"No hay quien pueda, no hay quien pueda con los compas arrantzales".*

Arratsaldea, berriz, goibela suertatu zaigu. Espetxeko jai egunek ezinbesteko tristezia dakarte eta gaur "santafaza" omen, ospe handiko eguna hemen, Alacant-en. Guri bost. Eguraldiak ere ez du batere lagundu. Hotza nagusi. Nola edo hala ausartu naiz asteko bi eskutitz baimenduak idaztera ohe gainean etzanda, aurrerantzean nire babesleku bilakatuko dena.

## *Apirilak 11,...7. eguna*

Ai ene, zelako astindua eman dioten baten batzuek Arrasateko Epaitegiari gaur goizealdean. Hemen eguzkia atera da. Patioko orduak goizetan izaten ditugu. Zortzi t'erdietarako jaisten gara. Moduluko gainontzeko berrehun eta piko lagun guztiak gosariaz batera zein bestera dabiltzanean Pataterdi eta biok dutxetara joaten gara. Handik bizi da Xiritron, gure katu mimontzia. Gure kolegatxoak aspaldi ikasi zuen gure ordutegia eta hantxe dugu egunero, zain, janaria noiz eraman behar diogun

erne. Dagoeneko zerbait arraro sumatuko zuen, agian gure aurpegi zorroztu hasiak, baina oraingoan laztanekin nahiko duela dirudi, bera ere nonbait gose greban, euskal presoekin bat egiten. Etarren katua izateagatik, eta kartzelariek hala aginduta, "txotek"[5] gerora erail egingo zuten gizajoa. Etologoentzako lana, eta baita "etarrologo" eta psikiatrentzako ere.

"Demokrazia Euskal Herriarentzat", horixe oihukatzen zuten ukabila altxatuz Herri Batasuneko Mahai Nazionaleko lau kidek Irungo zubia hegoalderantz zeharkatu eta berehala Espainiako poliziek atxilotu dituztenean. Hunkitu egin naiz telebistan irudiak ikusi ditudanean. Horiek ere preso datoz. Harro gaude. Hauek dira hauek, Euskal Herriarentzako Bake Alternatibaren bideak.

Astebete dagoeneko eta geratzen dana, ene-ene. Gaur miriku jaunak "bi litro edatea gutxitxo da"– la esan ziak. Etzekiat nolako begirada bota dioten, baina xuxen xuxenian "baina ez dago gaizki ere, eh!", botipronton. Baezpare edo.

Eguzkiak muturra azaldu dik. Bahuen ordua! Baldin eta gezurra badirudi ere esan egin diat, ba! "Hontzak" esan dik eguzkitan jartzea ona dala, gorputzak berak bitaminak sortzen omen dizkik eta. Hemen debatetxoa zabaldu diagu:

Nik – Aizak hi, gose greban baldin bagaudek etziok bitaminik hartzerikan, gero!

Hontzak – Aaaa, nik ez diat deusik jaten, gure Jinkuak emanda dittuk eta kitto.

Nik – Bai bai, baiña oaiñ arte etzeuden bitamiñak, derrepentian azaldu zaizkiguk gorputzian, ba, ta hori jatia bezalakoa dek, eta kitto ere.

Hontzak – Eeeez horixe, ez. Nik aubian ezbayat deuse sartzen, ez usaitzen ezta gustuba hartzen ere, garbi asko ziok ezdetela jan. Eta errekitto!

Beltzak – Aaaa, goooox ziok, mutillak!

Nik – bai horixe, hori dek arrazoya!

Hontzak – Ñias, ialokreo, bitamiñak eta guzi!

# Aizkorri, oinazez eta halere.

*Apirilak 12,... 8. eguna*

Gaur "Nuestra Señora del Milagro" omen den. Zorrionak Mirari guziai! Eta miraria izango den gaurko

eguna lasai bukatzea, ahuleriak jota bait negon. Komonera iristeko ttirrinki – mirrinki joan behar izan naun, erdi txoratuba. Earra hasiera!

Izaten dizkiñat egunak edozein gauza jateko edo irensteko gauza naizela.

*Doiñua: "Esne saltzailearena"*

Gose grebaren gauzak
horrelakoxiak
horrelakoxiak
trixturaren trixturaz
ta beti gosiak.
Jango nizkiñan orain
harri egosiak
gaztaiñen koskoletan
ondotxo josiak...
Hamar kilo dizkiñat
gaurkoz egosiak (bz)

Nor izan zen gose grebari "gose oporra" izendatu zion jakintsua? Belarrira ematen du horrek, batez ere txiro eta gose grebalariei, eta guztiz nabaria da esaldi

horrek asmatu zuenak sabela beteta zuela hori otu zitzaionean, guk ez bezala. Oso egun gogorrak dira hauek, ahuldura nagusi, zorabioak, denbora itsaso amaigabea eta gu txalupa hauskor batean nabigatzen dugun arrantzaleak. Morala gorabeheratsu, une batez izarretan eta handik gutxira lurretik.

Ez zait erraza suertatu dutxa ondorengo gaurko paseoa. Isilik aritu gara gaurkoan Pataterdi eta biok eguna antolatzeko goiz-goizetik mantentzen ditugun tertulia hauetan. Ezer ez badut aipatu ere, greba bertan behera uzteko pentsamenduak bururatu zaizkit:zalantzak, ezinak,ahaleginak...Pataterdiren begirada kezkatua nabaritu dut nire garondoan. Borroka honetan parte hartzeko iritzi eta kontrako aginduak enoratu behar izan ditut, familia eta, batez ere, euskal preso politikoen osasun mentalaz arduratzen den ile gorriko iratxoarenak. Baina azkenik, temati, egoskor, nire barne-oreka mantendu ahal izateko untziratu naiz abenturan, "gose-oporraldi" honetan, zeren eta latza bada gose greban aritzea, are latzagoa borrokatik kanpo gelditu eta lagunak egunetik egunera argaltzen ikustea. Bakoitza mundu bat gara. Azkenean Pataterdiren sasoi onak atera nau makalalditik.

Gaur ere egunkari eguna izan da. Horrela zenbat eta zeintzuk lagun sartu diren greban zehazki jakin dugu. Ziegaren bakardadean armada goseti baten presentzia nabaritu dut, horrek ematen duen indarrarekin.

# *Apirilak 13,...9. eguna.*

Goiz goizetik etxera telefonoz deitu eta amarekin egon naiz solasean. Normalean aski izaten dut astean behin etxera deitzeaz, baina greba hasi zenetik bi aldiz deitzen dut etxera, greban aurrera jarraitzeko ditudan euskarri guztiei eutsiz.

-Zer, zelan pasatzen dozuz egunak, ba?– amak itaun.

-Liburuak mahai gainean ipini, aulkian jesarri, tabakorria eta ur botila parean eta hantxe, kieto, arratsalde osoan geldi, geldi.

Pataterdi eta biok joan gara bisitara, "komunikatzera", etxe hauetan bisitan joateari esaten dioten moduan. Mintzalekuetara heldu garenerako lagunak bertan zeunden. Inortxok ez du etsitzen baina pasa den asteko giroaz alderatuz gero, nabaria da grebaren aldapa gogortuz doala. Bisita bukatu denerako gogoa berpiztu zaigu. Neu oso berritsu ibili naiz etorri zaidan andereñoarekin eleketan, ea isildu gabe, noizean behin ur botilari tragotxo bat edo beste kenduaz, baina gose greban gaudenaz erabat ahaztuta.

Gaurkoan Xiritronek kale egin digu, ez baita agertu eguneroko hitzordura. Katemeren bat errondatzera joango ote zen susmoa dugu, berak ere bisita eguna.

Bixita eguna. Hiru lagun heldu dittun: bik eztitten mende erdia ostera beteko eta hirugarrena gertu zabillen. Hori martxie hori berakin ekarri dutena! Bazirudiñen 18-20 urteko mutilak zirala. Berrogei minututan goitik eta behetik astindu dizkiñagu gai guztiak. "Zaharrak" omen dittun, hi! Baa zahar guztiak holakoak badittun eta gazteak gazte, hau xupauta zion.

"Zaharrak horrenbeste urte
dauzkatenak, dauzkagunok
omen dira-gera.
Ilusioz beterik dagoena, zaharra?
Egunero bere kemena jartzen duena, zaharra?
Deus ere eskatu gabe
ahal duena eta gehio ematen duena, zaharra?
Baita zera ere!"

# *Apirilak 14,... 10. eguna*

Hamargarren eguna. Tentsioa: 9,8/8. Miriku jaunak "tentsioa pintzatuta" daukatela ziok. Hara!, gaurtxe arte eztiat jakin izan ere tentsioak pintzak zittunikan. Xelebria gero!

Beste aldetikan hor zebiltzak Madrileko asuntuarekin, sekulakoak eta bi merke asko saldu nahian fatxa horiek. Okerrena ordea, eta hamaika treñeruz gainera, "Achucha" superrespañola. Aurkezteziña dek tipoa. Holakoak bazeudek Euskal Herrian ere, puaj!

*"..... anaien aurka ez habila*
*otso beltzarentzat atxik makila"*

Ez daude batere argi kontrol mediko eta kontrol politikoaren arteko mugak. Txiza azterketak agindu dizkigute, "antidopina" omen, horretarako pote txiki batzuk banatu zizkigutela gaurkoan bete genitzan goizeko lehen txizarekin. Ohetik jaiki eta beranduegi gogoratu naiz potetxoaz. Dena dela tanta batzuz lortu dut lagin bat jasotzea.

Pataterdik azterketa egiteko behar beste txiza banuela baieztatu dit, "pittin bategaz nahikoa da, txo!", eta barrezka hasi da bere aspaldiko lantokiko langile batzuen jarrera gogoratuz. Antza denez, patronalak txiza azterketak agintzen zizkietenean, lankide batzuk, kalitatearen ordez kantitateari erreparatuz, egunkari orriz estaliriko txizaz leporaino beteriko litrozko botilekin azaltzen ziren lantokian.

Moduluko bozgorailutik lurralde lehor honetan harreman familiarrik ez duten presoentzako abisua pasatzen ari dira:

– Aquellos internos que no tengan aquí la vinculación familiar hagan ahora mismo instancia solicitando traslado a su comunidad de origen. Imprescindible estar en segundo grado.

Bakarrik ahaztu zaie esatea "que se abstengan los etarras", hemendik esaten duten legez. Gu ez gaude bigarren graduan baina, horretaz gainera, maltzurkeriz egindako zerbait da, geuk entzuteko moduko mezu sibilino bat, txiste bat. "Sistemak funzionatzen du, sistema ona da. Zuek ere, errebelde aluok, zintzoak izan eta begira nola lortzen diren gauzak, gose grebarik egin gabe".

Oso baxu eta etsitua ibili naiz gaur. Hirugarren solairuan daude gure ziegak eta eskailerak igotzea gero eta

lan neketsuago bilakatzen da. Aurretik, ni baino bizkorrago, Patatertik irekitzen du mendi-martxa. Bera da Gorbeia igotzeko behar dudan gidaria. Lehertuta nago baina lagunak, bere keinu serioaz, ez du tregoarik ematen eta isilean "aurrera lagun" zioela iruditu zait.

Gora Euskal Errepublika!!
Biba Zapata, kabrones!!

## *Apirilak 15,...11. eguna*

Ziegazainen akats bati esker elkartu egin gara lagun grebalari guztiok espetxeko eritegiaren itxarongelan, neska ezik. Ez dago atzeko egunetako txinparta bera, baina mantentzen dira su eta erabakitasuna. Dagoenekoz konpa batzuk 8 bat kilo galdu dute. Neuk bost baino ez eta errudun sentitzen naiz.

Kontsultan Ortega Lara kartzelariaren arrestatzea dela eta egunotan lakio urdinez eta ozpin aurpegiz dabilen sendagile emakumeak "kontrola" pasatu dit. Bistan zen bere lana inolako arretarik gabe betetzen zebilela, axolagabekeriaz, gorrotoz.

Ziegan bakarturik arratsalde osoan ikasten egon naiz, hauxe baitut janari ezak eragiten duen sufrikario psikologikotik ihes egiteko terapiarik hoberena, egun hauetan garatutako teknika bat.

Ńo, ederki hasi den eguna. Heldu dittun gosariarekin eta eztidan ba gartzeleroak hau esan:

Kartzelariak –¿No desayuna?

Nik – No

Kartzelariak – Pero coma algo, hombre

Nik – Que no.

Kartzelariak – Bueno, el ayuno debe de ser bueno, ¿no?

Nik – Siii, una barbaridad. ¿Has probado alguna vez?

Kartzelariak – No, pero como por hay se dice eso...

Nik – Fácil, pregunte a cualquier mediko.

Kartzelariak – De todas formas debe de ser bueno, pues Gandy y Jesucristo lo hicieron.

Nik – ¡¡¡¡¡ Igual te crees que lo hicieron por afición o algo así?

Kartzelariak – La verdad no os entiendo. Es una postura dura, pero al final para nada.

Nik – Eso ya te contaré yo un poco más adelante.

Kafkianoa den, ezta? Eta tipoa guztiz irripartsu denbora guzian, etzanala pentsa. Beno, gutxinez patioan marmarka aritzeko gaia izan diñagu eta. Bihar gehio.

## *Apirilak 16,... 12. eguna*

Gaur Artzai Onean gose greban egondako talde baten postaltxoa jaso diat. Erredios, ze indarra nabaitzen dan hoiengan! Mordoxka postala jaso diat honuzkero eta pilak zihero kargatu egiten zizkidatek. Etsaiak dionez, lau katu omen gaituk. Garbi zegok batuketatan oso plako dabillela.

*Doinua: "Iparragirre abilla dela"*

Donostiako Artzai Onean
zeiñen ekintza ederrak!
Astindu ttuzte goitik beheraiño
Euskal Herriko bazterrak.
Gose greabalariak,
txori hegalariak,
dittugu bake-zuztarrak,
hemendik eman nahi dizkiegu
bihotzez gure eskerrak.

Gaur gure gorputzaren pitxarrak "aztertzera" joan garenean egokitu zaigun sasi-sendagileak "día nº 11" ipiñi

dik. "Altza"-k hori ikusita esan ziok hamabigarrena dala, bostean hasi giñalako. Eta tipoa etsita! Hala izan da:

Altzak – Aizu, gaur eztegu 11. eguna, 12.a baizikan.

Sendagileak – E? Ze? Nola? Aaaa, exxxxto, prrrfst.... beno, gertatzen dana nik "nere" zerrendak zero zenbakiaz hasten dittutela....

Zer esan ez dakitenean (errenuntzioan harrapatuta, noski) gezurra bota behar lehenengo, baita zoroena izanda ere. Erredikulu latzenean erortzen badittuk berdin-berdin zaiotek. Hauxen dek daukagun "demikrazia"-ren siñalerik garbiena.

Ze poza! Gaztelu beltzean gose greban ari den gure printzesaren berriak izan ditugu gaurkoan. Gaur duela bederatzi egun idatzitako eskutitza zen, beti bezala gozotasun eta bitalismoz betea. Greban ondo dabilela diosku, zorabioaz eta abar, baina berak hasiera batean usten zuen baino askoz hobeki. "*Horren ondo ez daramadana zera da, egun osoan isolatu egote behar hau, bakardadean, eta gainera baldintza hauetan...*"– eta batek departamendu zelular ilun, hertsi eta hotz bat begiztatzen du, non dena presoaren aurka dagoen, kartzelariak barne– "*...baina iraungo dut*"– baieztatzen du.

Arratsalde partean, irratiaren bidez dakigu Orereetan Martuteneko espetxeko kartzelari bat tirokatu egin duela ustez ETAko komando batek, horren ondorioz zaurituta suertatu delarik. Hemendik ez dugu ezer sumatu. Funtzionarioek lasai dirudite. Dena dela, hau ez da horrela geldituko. Handik edo hemendik azalduko da, eta ez asko barru, zital hauen mendekua.

## *Apirilak 17,... 13. eguna*

Oso aurpegi ilunak ikusi dira gaur, bai eritegian bai kartzelarien artean ere. Orereetako pasadizoa zela eta eguerdiko hamabietan bost minututako geldialdia burutu dute kartzelariek, hemengo bizitzan apenas islararik izan duen saioak. Orain arteko gure grebarekiko jarrera nagusia indiferentziarena izan da, ezer gertatzen ez bailitzan. Kartzelari batzuei irribarre zitala marrazten zaie gu sufritzen ikustean, eta ez da falta izan iruzkin inozoak egiten zituen kartzelaria ere:

– El ayuno limpia el cuerpo y fortalece el espíritu.
– No sabe usted cuanto.

Hamabi urtez preso dagoen ijito isila izan da gaur hurbildu zaidan preso bakarra atzo Orereetan gertatuko-

aren jakin-minez. Kontatu diodanean aurpegi liluratu batez gelditu da, ea sinesten ez zituela Euskal Herriko kontu hauek, non aldiro Pulgarzito-k Ogroa jaten duen.

Gainontzeko presoak kartzelarien mendekuen beldur dira, batez ere euskal presoekin solasean antzematen badute. Hala ere, atzoko ekintza armatuak gure grebaren oihartzuna patioan zabaldu du eta preso arruntak ohartu dira gure egunetik eguneko argaltasun eta zurbiltasunez, eta errespetuzko begiradak zuzentzen dizkigute.

Goibel ostera ere. Hemen laino bat ikustea holako gauza harrarotzat jotzen dek, eta honuzkero badaramakizkigu hamabi egun goibelduta, ebia tarteka, haizea...

Beste espetxe batean dagoen kide bati giltxurdiñetako kolikoak sekulako ziztada eman omen ziok. Ez omen du gose greba utzi behar, beltzak eta gorriak ikusita ere. Juxtu-juxtu PNV-ko errenegatuak guri buruz ia egunero esaten dutena. Ezin dittek halakorik onartu beren mixerian.

## *Apirilak 18,...14. eguna*

Hemengo kide batek ( gaurtikan aurrera "Indurain" bataiatu deguna) "gose greba hau nik behintzat Gorosperen martxean hartuko juat" esan zigun. Sendagilearenganakoan bildu gera modulo ezberdiñetako lagunok eta:

– Zer, nola zijuak asuntua?
– Ongi, oso ongi gainera, harrituta negok.
– Baai, pixkor asko hago.
– Eta buraeraiño niak; sendo zekusat nire burua eta bukatu egin behar juat.

Erredios, gizon honek daramakian "kanpaiña" arrunt latza dala kontutan hartuta, bere azken hitz horiek nere buruan barrena bueltaka izuli naiz ziegara. Hunkituta.

Hasieran Gorospe bezala eta azken txanpa Indurain bailitza abittu.

Gora gu ta gutarrak!

Sarritan kontrakoa dirudien arren, ez gaude bakarrik. Irauten jakin ezkero, jendearenganako konfiantza galtzen ez baduzu, basamortuko ibilaldi bakarti eta gosetiak oasia aurkitzen du beti. Hor ari dira adiskideak, senideak, auzoko lagunak eta abar adorez beteriko telegramak igortzen. Gaur zazpi telegrama eta Artzain Oneko gose grebalarien bi eskutitz jaso ditut. Ziegaren unibertsoan mila argi piztu dira. "Hor dabiltza, hor dabiltza", pentsatu dut. Eta ni jakinean.

Azterketa batzuk egin behar zizkigutela aitzakiatzat hartuta odola xurgatu digute eritegian. Burkideekin gurutzatu gara. Ea zer moduz nabilen galdetu didate, kezkaz.

– Hemen nabil eta, nahiko ondo.

Bestalde, kartzelariak desagertutako xerra baten atzetik dabiltza eta sekulako araketa orokorra burutu dute, batez ere preso arruntekin, guri errebotez zerbait tokatu bazaigu ere. Ez dute deus ere aurkitu eta poztu naiz. Ke biban los fuguistas, kopon!

Kilker baten kantuaz lokartzen naiz.

# *Apirilak 19,... 15.eguna*

Sendo doa borroka. Paseoan geundela Pataterdi ohi baino alaiago eta eztitsu ibili da. Zoriondu egin dit orain arte greban eramandako jarreragatik. Poz garbia du, kutsakorra. Gainera, ez da sentimenduak horren erraz adierazten duen horietako bat eta emandako animu horiek sekulako poza eragiten didate.

– Aupa Gorospe! [6] – Esan dit berak, garai bateko txirrindulari baten izenez ni bataiatuz, lasterketaren tropelean, garai batez behintzat, lan berezi bat zuena, mendi portuetan taldeko txirrindulari nagusiarentzako lana egiten zuena, edo sherpa papera egin, edo lasterketa apurtu.

– Aupa Gaston! [7] – Nik.

Eguna inolako nobedaderik gabe bukatu behar zela ematen zuen, baina...ai!...zelako ate-kolpe bana jo digu afaria eskaintzera etorri den ziegazainak gure ezetzik borobilena jaso ostean. Madarikazio isil bat jaurtiki diot, sakonean pozten naizen arren.

"Ahí os jode nuestra huelguita!", marmarkatu eta hemen jarraitzen dugu gure helburuen alde, tinko, duin,

erne, harro, ziegako horman iruditan itsatsita dagoen "Arrano Luma" indiarraren antzera, begiradan su eta izotza, eta eskuetan, ondo oraturik, bakearen pipa.

Nafarroako bertsolari txapelketa. Bortziriar bat txapeldun, lesakarra[8]. Bere azken bertsoari beste bat hemendik:

Txapela eskeiñi digu indarrez
lesakar bertsolariak
ta beriziki jaso dezaten
kale borrokalariak.
Xabier, indar handia zeukak
askatu duan hariak,
gehio kanpora ateriak,
exkax barruan gordiak (bz)
Bertso hau baino gehio merezi
dik herorren ausardiak,
eskerrik asko esaten dittek
askotxoren izerdiak (bz).

# Hiru Erregeko, hatsankez...eta lore.

*Apirilak 20,... 16. eguna*

Gaur ere 700 gramu behera. Askotxo. Etzekiñat zer nolako arpegia ikusi diten sendagile jaunak, baina hau bota zidan:

Sendagileak: – Zer moduz gaur?

Nik: – Ondo esan beharko.

Sendagileak: – Eta goserik sentitzen oraindikan?

Nik: –Noski, zera!

Sendagileak: – Ez al dute esaten behin hamar-hamabost bat egun pasa ondoren eztala goserikan sentitzen ala?

Nik: – Hori esaten duanak eztu sekula santan gose grebarik egin. Gosea BETI dago hor, bere aldaba etengabe joka. Eta, okerragoa dena, berarekin batera JAN BEHARRA ere. Eztakit bietatik zein ote den okerrena.

Zerbait sentitu din horrek, arpegia muatu zaion behintzat. Aaaaai, arrautz prejitu paretxoa!

Grebalarien loaldi arinean, goizaldeko ordu misteriotsu horietan, bat-batean piztu den segurtasunezko argi batek Arrano Lumaren argazkia bete betean jo eta, gauaren iluntasunean, dirdira egin du indiarraren aurpegi bareak nigan zirrara sortu arte. "Oi Arrano Luma, emaidazu kemena!"

(...)

Igande goiza da. Bisita eguna eta, beraz, dutxa eguna. Atea zabaltzeko itxoiten geundela euskal preso politikoenganako elkartasuna adierazteko Getxoko herrian atzokoan burutu zen manifestaldi bateratua, EGI barne, izan dugu mintzagaia[9]:

– Ondo, ondo. Badakizu zelangoak diren kontu horiek. Herri batean hasten dira eta gero herri guztietara zabaltzen den ekimen bilakatzen da.– Pataterdik

– Ea ba!. –Nik.

Amari ere hots egin diot. Pozik sumatu diot, oso, Amnistiaren Batzordeetako kideek lore xorta bat oparitu baitzioten lehengoan.

– Hala, ba, mutil, gogor ein, hor bakarrik zagozie baina zuon indarra kalean dago.

Lokutorioetan lagunekin elkartu gara. Ohi baino animazio gehiago dago. Altzako filologoari Amagoia etorri zaio bisitan. Dagoenekoz 10 kilo galdu badu ere, umoretsu azaldu da.

Orain arte ezagutzen ez nuen Otxarkoagako mutil bat etorri zait niri bisitan, euskaldun berri jatorra eta paketean "Herri Norte", Athletic-en zaletu talde baten taupaka, ikurrina eta guztiz, opari gisa sartu dit paketean. Lagun giputxien "postazoak" nire larruan jaso arren, harro harro itzuli naiz modulura nire bufandatxoa aldean. Zirikatzaile hutsa naiz (je, je).

Gaubean euria. Leihora ateratzeko gogo gutxi. Nire gorputzaz borobil bat egin eta "benga hi– nire buruari– saiatu lokartzen, txo".

## *Apirilak 21,...17. eguna*

Eguraldi txarra eta orduak luzeak. Ez da asko falta gure landarea loratzeko. Hala ere edozein unetan ahulezia nagusi daiteke norbere buruan, janaria behin eta berriro pentsamenduan dabilkigulako, eten gabe, burua beste kontu batzutan ipintzen saiatu eta zigarro bat bestearen atzetik piztu arren, gosearen irrikak ase egin guraz.

Ohean etzanda, botata, gose grebaren une latzenak pasatzen ari naiz. Horrela ikusi nauenean Arrano Luma bera ere asaldatu da, begiak toperaino irekita, eta argazkitik atera behar dela ematen du. Lilurapen antzeko zerbait izan dut, zeren eta, bat-batean Arrano Luma berbetan hasi dela iruditu baitzait.

-"Eutsi, egun guztiak ez dira berdinak izango eta. Gaurko eguna biharkorekin kateatuz gero, arinduko zaizu daramazun zama".

Iberiar penintsulara galeretan preso zekartzaten guantxe gose-grebalarien jakinduria du Arrano Lumak.

Goizetik patiora. Egunonak alkarri eman, zermoduzak geroxeago, goazemakeguzkitarak hurrena... eta norberak bere gaueko ametsak kontatzen hasi gaittuk. Hirurok baserrian eman diagu aldia, baiña bakoitzak bere arloa landuz.

"Beltza"k zerria hil dik: odolak bildu, hesteak garbittu, osorik, zatittu, urdaiak-urdaiazpikoak-buztana-belarriak-muturra eta abar gatzetan paratu. Gantza, likainkak, odolkiak denak eginda. Lan guztia egin bittartean gibela, giltsurdiñak eta burbuinak jan egin dizkik, zortzi modutara prestatuta. Izugarria!

"Hontza"k artaldearekin aritu dek. Gau batean ardiak ernaldu, libratu, arkumen hazi eta erreta jan. Eder askoa omen zioken arkumea. Ikaragarria!

Nere oilasko hankaluze arto eta zomorrojale pixkor trinkoak ere bide beretsua eman dittek. Eta txekorra? Baiña hori biharko edo utzi beharko.Urtutzen ari nauk. A ze nolako beteka!

Eta ametsak holakoak izaki, atzo ezkeroztikan kilo bat galdu diat. Posible ote! Gezurra zirudik.

Gaur jakin diagu nexkak gose greba bertan behera utzi behar izandu duala. Bronkitisakin hasi huken, baita takikardiak ere. Utzi egin behar, txiki-txiki eginda. Gehiegi ere egin dik, gajoak. Hori guztia bagenekigun eta orain askoz lasaiago gaudek denok.

## *Apirilak 22... 18. eguna*

Atutxak, aske dabillen zoro amorratu horrek esan du: "Hara, har itzazu seireun presoak; har itzazu bi milla ihes-lariak; har itzazu Ezker Abertzaleko 150.00 botuemaileak; sar itzazu itsas-untzi baten eta eraman itzazu itsas zabalera. Orduan hondora ezazu untzia gaizkile horiek guztiekin batera... eta hala ere Euzkadiko arazoa ez duzu horratik konponduko"

Bapo! Nork dauka ideia hori buruan iltzatuta: Atutxak soilik edo PNV-ak guztira? Oso garbi dagoena da iñortxok ez diola deusik ere esan holako astakeriak publikoki botatzeagatik.

Eli Gallastegik aspaldi eman zuen abixua.

"Altza" gorriak eta kolore guztietakoak pasatzen ari. Eztu uzteko asmorik hala ere. Izurratuta baiña erakusten duan umorea krixtona gero! Pernando Amezketarra atzean uzten du honek.

Eguzkia berriz azaldu eta Arrano Lumak lasai itxura du, atzokoan ezer gertatu ez bailitzan. Pataterdi kementsu dabil. Arditxakur baten buztanaren parekoa naizela esan dit, "beti atzetik eta amorerik eman gabe Gorbeiako martxan". Arratsaldean eskutitz bat idazteari ekin diot:

*"...bai Ainara, gogorra suertatu zaigu aurtengo negua, holakoa da bai, askatasunaren bidea: kontrakorronte jaio eta kontrakorronte bizi. Oraindik jaio gabe diren umeen begiek borrokaren kausaz mundu honetan sufritzen dugunok epaituko bagintuzkete, garaile aterako ginatekeela idatzi ohi zuen aspaldi Guatemalako poeta batek.*

*Asko eta asko hunkitu ninduen zure azken eskutitzak. Gogoan daukat zu eta Ana Tere arteko Bilboko kaleetako elkarrizketa, zipaio batzuk 'Euskal Herriarentzako Demokrazia' oihuari balaz erantzun ziotenekoa, hain zuzen.*[10]

*– 'Ama, la hostia, ez joan horrantza!'*
*– 'Ainara, ez ein negar. Hemen aurrera ein bi da, ostantzian ezdau zeinik'.*

*Zelako ikasgai eder bezain izugarria zure amarena, mundu honetan sofritzea zer den ondo baino hobeto dakien andra. Baina tira, laster Bizkargi eguna izango da, udaberria loretan, eta hantxe, tontorrean aurkituko gara denok: zu, Ana Tere eta, gogoz, osaba Antonio eta ni, zuekin batera, atzoko eta gaurko gudarien alde. Musutxuak.*"

Fijo ezer ez jakin arren, gure "ipurtargiak" gose greba utzi behar izan duela uste dugu. Altzakoak bisitan esan zigunez, asko kostatzen zitzaion grebaren martxa jarraitzea. Nik neuk ere eztakit Patatedi edo Arrano Luma faltan zelan ibiliko nintzatekeen, agian dagoenekoz greba utzita izango nuen. Batek daki. Borrokaren ibaiari emandako guztiarengatik zorionak eta ohore zuri, gure taldetxoaren irribarre gardena zaren emakume horri.

Momentuz zortzi kilo argaldu naiz. Arratsalde osoan ohean etzanda eman dut Arrano Lumaren arretapean eta ETAk[11] apirilaren 25erako zabaldutako borroka deia gogoan, "egoera honen aurrean ez dugula men egiten erakuts dezagun guztiok batera". Bat-batean Arrano Lumak hizketan hasi da:

– Gosean palastatzen atzo baino hobeto ikusten haut gaurkoan, armarik gabeko gerlari hori.

# *Apirilak 23,...19. eguna*

Egunak 24 ordu. Arrano Lumaren negarra sumatu dut goizaldean. Gorrarena egin dut gizonaren dolorea –nire dolore bera– errespetatzeko. Ez du horrela luzaroan iraun, ahots sendo eta monotono batez, otoitz antzean hasi baita. Egunak 24 ordu.[12]

Egunak 24 ordu. Ez da faltako nor "jaten ari dira" bide bazterretatik zitalki esaka ibiliko denik ere, ogia eta gatza ukatzen dizkiguten horietakoren bat. Eta halabeharrez jaten ari naiz: poemak, burkideen animoak, kantak, aireak dakartzan berriak, gizakia ezbaita soilik ogiz bizi. Eta ni, bekatari, nikotinaz beteriko platerkadak irensten ditut. Ai ni, sator, kittano, birikak belzturiko meatzari grebalaria. Egunak 24 ordu.

Iluntzerakoan, espetxean isiltasuna nagusitu denean eta kartzelariak mozkortzen hasten diren une horietan, Arrano Lumak bere pipa luzatu eta izpirituen belarra erretzera gonbidatu nau. Ziega ke usaintsu batez kutsatu da, espazioa handitu eta zelda kanpamendu, lurralde liberatu bilakatu da. Sute baten inguruan indiar gizon zein emakumeak dantzan ziren borobilean. Bertara hurbildu eta neu ere hasi naiz dantza eta kantetan:

*"Laister ikusiko dute, joder,*
*potroetaraino gaudela, joder,*
*potroetaraino gaude.*
*Nork-nori-nor,*
*baldintza ta subjuntibo, joder,*
*baldintza badakigu".*

Ahituta ikusi nauenean, Arrano Lumak, begi kiño batez, "orain ixildu, gerlari, eta BIETAN JARRAI", esan dit ahopeka.

Perun gertatu da azkenean: sarraskia. Egileak? Betikoak. Txikituta izan direnak? Betikoak.

Lau hilabete luze justiziaren eske MRTAkoek. Lau hilabete luze botereak gezurrez gezur.

Lau hilabete luze borrokalariek beren bizia arrixkatuz. Lau hilabete luze botereak haien heriotza ziurtatuz.

Lau hilabete luzez Peruko egoera munduari salatuz MRTAkoek. Lau hilabete luzez munduak horri bizkarra emanez.

Lau hilabete luzez MRTAkoek negoziazioaren bidez, gaia hitzegiñez konpondu nahirik. Lau hilabete luzez botere faxistak armak zorrozten.

Sarraskia. Hamalauak, gizasemeak eta emakumeak hilik, erailik. Peruko faxistak pozarren. Mundu "demokratikoa", kontent: arazoa konponduta.

AGUR ETA OHORE URRUTIKO
ANAI-ARREBAK!!

## *Apirilak 24,... 20. eguna*

Eritegian elkartu gara gaurkoan ere. Odolezko azterketak "según lo previsto" atera direla baieztatu digute. Zer esan nahi du "lo previsto" horrek? Lagunak zurbil daude, baina begietan dirdira berezia, gutxi falta baita kanpaina bukatutzat emateko eta, gainera, bihar borroka eguna Euskal Herrian: "laister ikusiko dute, joder, laster ikusiko dute, joder..."

Lagunetako batek saltxitxoia jateko antojua duela, beste batek eztakit zer.

– Benga, la hostia, zer moduz?

– Ondo. Ez banaiz helmugara ailegatzen "pendejo" bat naizelakoz izango da, ez beste edozerrengatik".

Pozik itzuli naiz modulura. "Ño, Indurain asko zegok hemen. Beltza pasaitarra, esate baterako, berrogei ta hamar urteko gizona, emaztea ere preso duena, edo Intxaurrondoko trikitrilaria, edo Malaga aldean isilean greban ari den Tatiana, edo Begoña, edo..."

Ekintza Bilbon.

Ai ama!

*Apirilak 25,... 21. eguna:*

Borroka eguna..... eta sentimenduak uholdeka, oroimenak borborrean. Etzionat ispiluari begiratu nahi.

Patiora erten gaittun, ttapa-ttapa, poleki-poleki. Ordu erdia edo, oiñez; ordubete exerita. Goiza osoa antxuak prestatzen pasa diñagu, baita hogei ta zazpi errezeta asmatu ere, gutxiñez.

"Altza" hobeto diñagu gaur, beste aurpegia zeukan. Lo pixkat ere egin omen din. "Elektro" bat egin zioten, pultsazio gutxi eta. Baiña ondo.

"Indurain"ekin dagon "Ubide" txepetxak baiño biziago zion eta holaxen eman din gose greba osoa. "Prestatua, mutillak, prestatua", bere begirada biyurri horrekin esaten din. Sasoia, ordia!

Bihar azken eguna. Hau xupauta zion.

"*Grandola Vila Morena*
*Terra da fraternidade*
*O pobo e quem mais ordena*
*Dentro de ti ó cidade*"

Ez da ezer berezirik somatzen hemengo giroan. Greba aurrera doa, ixilean, "berba gordea delako gosea", poetaren esanetan. Euskal Herrian, ordea, goizaldetik hasiko ziren matxinadak. Kontrol polizial ugari eta irratiak informazio gutxi.

Euskal irakasleen bisita dugu. Pataterdi eta ni kabina batean eta Filologoa eta Hontza beste batean. Guardian

dagoen kartzelari maltzurrak lokutorio bakoitzeko ateak giltzaz itxi ditu, ohi ez bezala. Beldurra omen dio lau preso bi irakasleekin elkartzeari.

Estatistika gaiaren inguruko azalpenak, euskal unibertsitate publikoren berriak eta iruzkin politikoak nahastu egiten dira elkarrizketan. Humore ona nagusi eta irakasle errepresaliatuentzako gomutak.

Gaubean Atutxak, "Belarri Nagusiak" eta abarrekoek frakasotzat jotzen dute "borroka eguna", irratiak esaka dabilenez. Hori ikusi beharko. Dena den, urrats bat izan da.

"*Que no se sientan eternas las piedras*
*pues hasta las piedras pierden su dureza*
*cuando el martillo golpea con fuerza*"
*(Nueva Trova Cubana)*

*Apirilak 26,... 22. eguna:*

Grebaren azken eguna. Banekien lorik ez nuela ondo egingo. Egunsentiko argi printzek leihotik begira harrapatu naute ordurako hiru bat zigarro erreta nituela.

– Egun on, Arrano Luma.

Sekulako eguna dator. Hodeiertzerantz begiratu eta, ukabila altxatuz, landa guztia agurtu dut, nonbait indiar ohiturak ikasita edo. Sirenak jo baino lehen, isiltasuna lagun, gose grebalari ororen figurak zeru altutik pasatzen ikustatu ditugu Arrano Luma eta biok. Une bateko kontua izan da, lilurapen bat. Eta segituan boligrafoa hartu eta nire bihotzeko anai handi bati telegramatxo hau idatzi diot:

"*Gabon zahar egunean antzemandakoaren antzera, udaberriak horma bat eskalatzen, lan bat bukatzen, itsasontzia porturatzen harrapatu gaitu. Ondo errekuperatu eta "Otsoekin dantzan" ozen eta libertario batez...Euskadi ta askatasuna. Jhonny*".

Goizeko zortzirak eta laurden, altza porru! Hamasei ordu falta zaizkiguk borrokaldi hau bukatzeko.

Ohea egin diagu, baita ziega txukundu ere. Idazteko tresnak prestatu, ea ba. Beno, eguna bete egin behar diagu. Tarteka marteka bi lerro idatziko dizkiat. Inspirazioa datorren bitartean "Piperra"ri idatziko ziot zor dioten eskutitza, honuzkero marmarrean arituko dek eta. Nekatzen naizela? Baa hogei egun hauetan ikuttu ere egin ez deten liburua hartuko diat eta kitto. Goiza behintzat antolatu diat.... eta bederatziak eta laurden oraindik. Arrayua!

Ahaztu gabe: sendagileari glizerinazko bi "misil" eskatu behar dizkiot, orain hogeita bi eguneko "kargazoia"ren erdia barruan zakat eta.

Joer, tentsioa 11/7, earki gero! Hamaika kilo t'erdi gutxio guztira, nere hogei urtetan neukan pixua. Lekutan dago Mendaro! Hamar t' erdiak eta nekez zijuak hau.

Liburua hartu diat "lehen" utzitako orrialdean, hots, 647an juxtu. Ahaleginak eta bi egin eta gero, 648an utzi behar izan diat. "Piperra"ri bost lerro egin zizkioat, bapo. Buo, baserrira nijuak eta sekulako babarrunak prestatuko dizkiat bazkaritako, ze arraio! Ez odolki, ez aza: babarrunak-babarrunak gero! Hamabiak laurden gutxi.

Donostiako Artzai Onak eman omen dik berea. Ea azkena dan! Hemendikan aurrera beste moduren batera jarraituko dek borroka latz hori. Etzekiat zenbat talde gehio prest dagon gogoz ekiteko. Eutsi!

Ura edan behar diat. Egia esanda koskabillotaraiño ura dala ta ura dala. Bukatu onduan eztiat ttantto bat bera ere bi hillabetetan barrena edango, ala mariasssssantixima! Ordubiak hogei gutxi, ene bada.

Arratsaldea. Patiora. Zer moduz, mutillak?
Hontzak: Depiutamadrrre, hi.
Beltzak: Hementxen, ji-ji-ji. Eta hi?
Nik: Babarrunak "bazkaldu" eta gero, bette-bette inda.

Eta hortxe hasi dek eguneroko desmadria. Ea gaurkoan nola prestatu dittuten; Beltzak txipiroiak mimoxo mimoxo paratu dittula; Hontzak, berriz, antxumia erreta, pipar erreak ere (kilo bat edo)... Bostak eta hogei.

Seirak, zazpiak, ziegara ostera, Zortziak. Aparia dator:

– Quiere cenar?
– No, estoy desganau hoy.

Hamabiak. Sagar bat. Gero gerokoak, eta eutsi.

# Epilogoa

Mendiz mendi lainoen magalean hurbiltzen den irrintzia bailitz iristen zaigu gose grebaren lekukoa. Honelaxe ematen diote sarrera bizipen horretaz bi kideek egin duten egunerokoari; "Badator, sumatzen da giroan eta lagunen elkarrizketetan. Badator gosearen lekukoa, euskal preso kolektiboaren oihua, indarra eta kemena..."

Sarrerako bi esaldi horiei "gosea" hitza kenduko bagenieke ospagarri litzatekeen zerbait iristen dela lirudike. "Gosea" hitzaren aipamen hutsak, aldiz, demakio dagokion dimentsioa.

Badator, sumatzen da giroan... hain ezaguna zaigun sufrikarioa, lehen ere hamaika gose greba egindakoak bait gara. Hurbiltzen ari da eta inork ez du burua besapean ezkutatzen. Badator bai gosearen lekukoa, euskal presoon oihua. Bakoi-

tzak ahal duen neurrian guztiok gara boluntarioak; ikusi nahi duenarentzat horra hor etsitzeko prest ez dagoen kolektibo baten indarra eta kemena.

Behin gosearen eremuetan sartuta, ez dago atsedenik; denbora luzatu egiten da, une bakoitza amaitezina bilakatuz. Une bakoitzak beste bati uzten dio lekua, egun bakoitzak beste bat dakar atzetik. Ez dago atsedenik eremu horietan. Ziegako bakardadean unez uneko estutasunak gainditzean jarri behar dira ahalegin guztiak. Ideia finko bat buruan, indarra ahulduz eta, besterik ezean, urdailak erraiak gordinik janez. Guztiok daukagu azken egunerarte eusteko borondate finkoa, baina jakin badakigu ere hori ziurtezina dela, gorputzak edonola erantzun baitezake osasun arazo larrien artean greba utzi behar araziz.

Eta norbera bere gosearekin oheratzen denean:

– Egun bat guttiago, gaurkoari ondo eutsi diot... biharkoa baneki.... etzikoa baneza...

Ez dago atsedenik, ezta ametsen munduan ere, non bihotzaren beharrak urdailaren beharrengandik ordezkatuak izaten diren. Gosearen eremuetan barneratzean norberak ez du bere determinazioa baizik. Zintzotasunaren erraietan hazi eta bizi denaren tinkotasun goxoa, leuna, maitekorra.

Zuhaitz bat ekaitzaren erdian. Haizearen eta tximisten erasoak noiz baretuko diren ezjakinean, zutik irauteko determinazioaz, ondoko zuhaitzekin elkarrekiko babesa eskainiz eta onartuz eta sendo errotutako zuztarrez lurrari atxekiz, bere adarretatik kukua noiz entzungo zain. Etxoite aktiboa, etsoite amaitezina... biharkoa beneki... etzikoa baneza....

Eta borroka horiek ez dituzte greziar trajedietako heroiak ematen, ez halajaina! Gorputza ximeltzenagotuz doanean arimaren ahultasunak itxuratzen dituzten jazkiak ere banan bana erortzen dira, zenbaitetan ahulezia bera biluzik eta gordinik agerian utziz. Halakoetan, inguru arrotz

eta bortitzatik ihesi, kideen babesean biraurkitzen da aitaren etxea. Hitz batek, keinu edo irri batek, bapateko begirada iragankor horrek isuri ohi duen indarraz eta berotasunez elikaturik, bihotza beroturik, une batez galtzear somatu den aitaren etxea bere edertasun osoaz azaltzen da berriro bide muturrean.

Bi kide horien egunerokoetan hain ederki isladatzen den ekaitza baretu zen.Gure basoetan kukua kantari ari da berriro. Hala ere, jakin badakigu zoritxarrez beste ekaitzak iritsi daitezkeela, agian gogorragoak, agian iraunkorragoak, euskal presook euskalerriratzen ez gaituzten bitartean ez baitugu amore emango. Borrokan daramagun urte t' erdi honek aurrera jarraitzeko erabakitasuna baieztatu eta indartu digu. Zuenarekin, kanpoan diharduzuenon borrokarekin bateginik helburua lortu arte. Bateginik.

*"Lagun, hator gurekin*
*denok elkarrekin*
*badugu zer egin..."*

★

## OHARRAK

1.– 1997. Otsailaren 18an zortzi lagunek gose greba latz eta mugagabeari ekin zioten, euskal preso politikoak Euskal Herriratzearen alde, Iruñako apezgaitegian. Greba martxoaren 29ra arte luzatu zen, azken grebalaria ospitalera eraman zuten arte.

2.– **"Boki"**: kartzelari.

3.– Arantzatzu eta Artzai Oneko ekimenak: Euskal Herrian 90. hamarkadan egin ziren barauualdi kolektiboak.

4.– Euskal Presoekin elkartasunez Euskal Herrian izandako sabotaje gaua.

5.– **"Txota"**: preso salataria, kartzelarien morroia.

6.– “**Gorospe**: garaiko txirrindularia.

7.– **Gaston**: garaiko txirrindularia.

8.– Xabier Silveira bertsolari gazteak Nafarroako Bertsolari txapela irabazi zuenekoa.

9.– Presoen aldeko Getxoko plataforma bateratuak deituta, EGI barne, 3000 lagunek parte hartu zuten manifestaldi batean.

10.– 1997. Otsailaren 15ean Ertzaintzak tiro egin zuen "Demokrazia Euskal Herriarentzat" lelopean Bilbon egiten ari zen manifestazioaren kontra

11.– 1997. Borroka egunerako deialdia apirilaren 25erako, ETAk zabalduriko Alternatiba Demokratikoaren alde.

12.– 1997ko apirilaren 23an Peruko Japoniaren enbaxadako erasoa izan zen, non MRTAko (Tupac Amaru Mugimendu Iraultzailea) gerrillariek hainbat hamarkada diplomatiko bahituta zituzten. Erasoan gerrillari guztiak hil zituzten, errenditu ostean errematatuta. Peruko presidente ohi Fujimorik zuzendu zuen hilabete batzuk lehenago prestatutako eraso hura.

Bi euskal preso politikok urte luzeetan buruturiko hamaika gose greba horietako batean, –seguruen, ez besteak baino luzeagoa ezta laburragoa ere– propio idatzitako egunkarietatik ateratako hausnarketak eta burutazio zenbaitek osatu dute lantxo hau. Gose greba eta kartzela, beraz.




